# BERSO BERRIAC ORDAÑETAN JARRIAC.

1
Bersuac ipintzera nua ni besteri
Lenago bestec ori eguindic neri,
Ortan sayatu dana Juan José Udarregui
Orain ari dana da Pello errotari;
Itz eguin alcarri
Arrazoyac garbi
Ez guezurric jarri
Mundu parragarri
Cer ceran icusico zaitugu zarri.

2
Milla zortzireunda larogueita amairuban
Agorrac amar egun cituen orduban,
Aizpeitian bersuetan jocatu guenduan
Ya premiyua norc ateratzen zuan;
Plazan tableruan
Egun argui claruan,
Jende asco ceguan
An erreparuan
Orduco Apustuba galdu cenduban.

3
Premiyua jarriya zuen an batentzat
Ori jaquiña dago onenarentzat,
Udarreguic desiatzen zuena beretzat
Baña portunatuba dago Pellorentzat;
An ceuden juezac
Ez oso aldrebesac,
Neurtutzeco gauzac,
Jonaube obetzat
Pena ori daucazula iduritzen zat.

4
Apustuba jocatuta urrengo goician
Noticiac aguro zabaldu ciran,
Gacetan ere baita igual La Vocian
Nola premio oyec Pellorentzat ciran;
Juan José atzian
Guelditu da utsian
Estadu motzian
Nere paltac etziran
Zuc ere izango dezu irabastian.

5
Agorraren amarrian Azpeitico plazan
Guchienian bots milla pertsona bazan,
Gu icustia gatic cantuzco alegranzan
Guero contatutzeco ederrena nor zan;
Udarregui an zan
Cerbaiten esperantzan
Utsic atera zan
Nere culpa etzan
Buruba macurtuta echera juantzan.

6
Premiyu orretan zu ezpaciña izan
Bernardo ta neretzat bentajago zan,
Pesta ederragua ascoz eguingo zan
Gurequin diferenciric ateraco etzan;
Guizon au sortu zan
Ta plazan sartu zan
Guichi portatu zan
Orduco izcuntzan
Cer languille zeguan ezagutu zan.

7
Azpeitiyan sartu ziñan Nicolasenian
Jarri nitzaizun cere aldamenian,
Queja batzuc contatzen asi ciñanian
Ustez itzeguin nizun guizatasunian;
Alzana onian
Nere aleguiñian
Lagundu naiyan
Alnuen gaiyan
Aztu gabia dauca cer esan cirian

8
Alcar ezdegu galduco bertan niyon esan
Errespuesta ederra ningana etzan,
Ya naita ere ura galtzen errez altzan
Berac pentsatzen zuen obia otezan;
Alaco grandezan
Nigandic juan zan
Pello aserre zan
Orra itzeguin cer zan
Lan orregatic ori utsic irten zan.

9
Diruba ecarri zuen Franses famatubac
Juzcalariyac berac zeuzcan autubac,
Ondo neurtu zitzatela gure talentubac
Ceñec lan eguin zuen daude acordatubac,
Urre sillatubac
Neri entregatubac,
Nic ditut artubac
Ta poltsan sartubac
Bentaja eguin dit neri an portatubac.

10
Pelloren concienciac ezdaduca arric
Juan Joseri eguinda aciyo charric,
Jocatzeraco cerbait arc itzeguin balit
Pozic emango niyon piscabat bederic;
Gaizqui neregatic
Itzeguin atzetic
Ezdauca arturic
Arc nere urreric
Cergatic ezdiyodan nic orri zorric.

11
Zure arrazoi batzuec etzaizquit gustatu
Nere contra cerade manifestatu,
Guezurrasco esandezu guchi sinistatu
Nerequin etziñaden iñun ajustatu;
Cocheta ostatu
Dezula gaztatu
Diruric ez artu
Etzaude contentu
Abisatu cizunari orain escatu.

12
Abisatu cizun ori ezdago pobria
Guc aña izangodu cillar da urria,
Bestela ezdaquit baña mingañez noblia
Besterenetic compritu nai luque ordia.
Premiyo neria
Ez dala zuria
Sin[illegible]ia obia
Nic det poderia
Gordetzia libredu cenec beria.

13
Judasen oficioric secula ez det izan
Munduban oraindaño nere bizitzan,
Pentsatzendet cerorri ala ote zabilltzan
Guizonac endredatzen utsaren pesquizan;
Ez bacendun esan
Zuretzat obezan
Or zaude bajezan
Ango interesan
Nic zucen seguitzendet dedan pobrezan

14
Guezurrarequin artu dituzu neurriyac
Campora zabaldubaz echeco berriyac,
Nic esango dizquitzut eguiyac garbiyac
Nun nai ondo ematendu gauza ondo jarriya,
Bernardoc erdiyac
Ango urre gorriyac
Ditu ecarriyac
Berdiñ guiñan biyac
Ez du zure lotzaric errotariac.

15
Seculan ez det eguiñ biar ezdan lanic
Zuc bestec ez dit esan lotsic ez dedanic
Culparic izan banu nic ezneducan penic
Nic ez nuen lagunari partitzeco ordenic;
Orlaco guizonic
Mundu ontan zanic
Ezdago euscaldunic
Orla jardun danic
Zuc aurrian aña lotsa atzian det nic.

16
Partitzeco ordena dala Udarreguic esan du
Guezur contari dabill au munduz mundu;
Nic premiyua atera sufritu ecin du
Pentsatutzen jartzian ernegatutzen du;
Pena aundia artzen du
Berac ezagundu
Neri ecin quendu
Biyotzetic mindu
Zuretzat ere bazan eguiñ bacendu.

17
Usurbillen izan nitzan iri apustuban
Udarregui jaun aure portunatu an,
Egun guztiyan alcar icusi ezquenduban
Nigana allegatuzan gaubaz beranduban;
Ni nitzan lecuban
Sartu ostatuban
Asi guiñan cantuban
Biyoc lau puntuban
Orducuaz al zaure sentimentuban.

18
Bajatu ceradela diyozu zardadez
Neronire aurrera nua edadez,
Berroita amairu urte nic egoarri gaubez
Bautizmoa emangoizut aladan edo ez
Nere calidadez
Nabill guiza leguez
Gaitzican esan ez
Nic uste dedanez
Ez nabill arrotuta gaztetasunez

19
Ara berso berriyac D. José Alcañi
Pello errotacuac dizca ipiñi,
Aurretic ori bera eguin neroni
Vuelta ematia citzaidan comeni;
Biciric banaiz ni
Osasunaz ongui
Oimbeste armoni
Ez gueigo ibilli
Orra errespuestac icasi ongui.

TOLOSA:—Imp. de E. López.